# GUIPUZTARREN ALABANTZARACO ITZ NEURTUAC.

Gazte gende eder bat
ceiñ oberican,
jarri ta eegoana
ondo gordericau:
Marruecoetara
laster emendican,
irten biarra dago
nosqui oraindican.

2

¡Gazte galai ta joyac
ceiñ valientiac,
diran gure mutillac
euscaldun maitiac!
eguitera dijoaz
African paqueac,
emanaz moroairi
naico combatiac.

3

Aurrena sutan asi
azquena atera,
oyec eguingo dute
arequin papera:
ez dirade juango
guizonic jatera,
baña ez salvageric
etorri aurrera.

4

¿Nola moroac iñon
vencitu iñola,
euscaldun ederraren
zaña ta da odola?
testigu izango da
chit sarri dembora:
barcacio escatzen
letozque ondora.

5

Ceutan sartu eta
andican barruna,
Tetuandic Tangerra
daucagu fortuna:
colerac galdu gabe
gure osasuna,
laster gure mende da
beltcen ondasuna.

6

Tanger artu ezquero
naiz ascoc jaquiñez,
dago ezquerretara
Erri bat Mequinez:
orrera joan bear da
zorcico ariñez,
contrario danari
su firme eguiñez.

7

Ara joan ezquero
au da Mequineza,
an dago moro danac
duten interesa:
Emperadore jaunac
garbi esan beza,
nor diran aberatsac
nore duan pobreza.

8

Emperadore ori
norequin dan vici,
gaur naiz aditutcera
seguru irichi:
ez badu diotenez
dirua aiñ guichi,
¡mutillac! Serrallora
guacen lembici.

9

Noviac auqueratu
gustocoric balitz,
beltzac zurien zale
omen dira aguitz:
ni onetan engañuz
ibiltcen ez banintz,
dirua eta damac
carreatu zaldiz.

10

Asi naizan lancan
nago guztiz bero,
bai eta fio ere
oraindic entero:
armac mutil gaztiac
eraman ezquero,
laster det vitoria
oso bat espero.

11

Ea mutil maitiac
chit vioteecoac,
len luciteeñ bazuan
noiz nai Guipuzcoac:
eman aurqui pruebac
onenetacoac,
errazqui garaituaz
moreriacoac.

12

Viva Diputacio
Erri danen *Ama*,
*viva* militar danac
daucatenac arma:
sostenitu dezagun
beti degun fama,
ez dedin casta charric
etorri guganа.

*Arren eder gaztiac*
*artu gaberic miñ,*
*portatu biazute*
*ceraten becin fin.*

*Zuen gan jartcen degu*
*biar dan gracia,*
*defendi ezazute*
*ceren Provincia.*

*Naiz bala chistuaquin*
*ta naiz bayonetan,*
*ez gaztiac bildurtu*
*guerrate onetan.*

*Galtza berri gorriac*
*chaparequin boina,*
*balio du moroac*
*guztiac ezaiña.*

*Tolosan: Andres Gorosabelen echean 1860.*

ex. Antonino Larunza Tolosa